# ANAYAK GARA

## IPUIÑA



ZAMAŔIPA ABADEAK EGIÑA

Euskeraz, bakizu,

**ge** ta **gi**, erderaz **gue** ta **gui** irakurten direan erara irakurten dira;

**tx**, erderazko **ch** legez;
**ŕ**, erderazko **rr** legez;
**l̃**, erderazko **ll** legez;
ta **x**, prantziataŕen **ch** legez.

# ANAYAK GARA




## IPUIÑA

ZAMAŔIPA ABADEAK

Dotriñako umeentzat egiña

---

BERMEO'N

GAUBEKA'REN IRARKOLAN

1929

*Nihil obstat.*

JOSEPHUS MICHAEL DE BARANDIARAN
Censor

*Imprimi potest.*

Victoriæ, 12 Octobris 1929.
JACOBUS VERASTEGUI,
Pro-vicarius generalis.

# ANAYAK GARA

## IPUIÑA

Patxitxun mutilko lagunak ez eukien iñoiz Patxitxu bako olgetarik.

Eta ikusirik ez zala eldu domeka-ařatsalde atan elizara Patxitxu mutilko lagun ona, bere laguntxuen begi-begikoa, Dotriñara ta Eŕosariora jai-domeka guztietan etorten zan dotriña-ikasle zintzoa, bere etxera joan zirean, ia zer jazoten ete yakon jakiten.

— ¿Zer dakazue, mutiltxuak? — itandu eutsien Patxitxun izekoak, euron deira urtenda.

— Ia Patxitxuk zer daukon, gaur ařatsaldean Dotriñara ez Eŕosariora etoři ez egiteko.

— Andik dala ta egon naz neu ba...

— ¿Ez ete dago oyan gero? — urten eban mutiltxuetariko zařentxuenak.

— ¿Oyan ostera? ¿Zer dala ta? Bazkaldu besteetan lez egin dau, ta neuk ez aitak ezteutsagu igaři ezer txařik daukonik.

—Ba nik ondo igaři deutsat, uřean. Meza

nausi - ostean ezteusku olgetan lagundu gura izan ta... Orduan esan dot...

— Banoa etsean ete dagoan ikusten. Eta zuek itxaron or etse-auŕean apur baten; etsean ezpadago, bere bila danok asteko... Jesus maitea, ¿zer ikusi bear ete dogu?

Ta auxe esanda, laŕi bere laŕi, Patxitxun gelarantz egin eban.

* * *

Ateko kisketari eskuko ikara andiaz eragin eutsan.

Ta atea zabalduaz batera, gorputza guztia ikara baten iminteko berba onek entzun zituzan, Patxitxu oyan ganean burua oitik kanpora atarata ikusten ebala:

— *Ezkondu gura dau baita bere... Zumeza Olandiaga Jaxintok... eŕi onetan yayo ta... eŕi beronetan bizi danak.....*

¡Ene Jainkoa! ¡Neure aita da au!.. Oŕa or egia izan da... Esan eustan aitatxuk berak... izeko Katalin ezkonduko dala laster, eta izeko Katalin ezkonduten dan egunean... berak beste izeko baŕi bat ekaŕiko daula... Ta izeko baŕia ekarteko izango dira onek deyunok... ¡Ene! ¡Zelangoa izango ete da izeko baŕi ori!.. ¡Ene! ¡Ene Jainkoa!

— ¡Ene Jainkoa! — esan eban Kataliñek be, bere lobatxu maitearen gorputza oitik bera jausten asten zala ikusirik. — Ekazu, Jauna, bear dodan indaŕa...

Ta tranku baten oyan auŕera eldu, ta bere esku ikaratu bien ganean atrapau eban bere lobatxua... luŕari iya deutsala...

Ta izeko onaren besoetan itzartu zan Patxitxu, non egoan ezekiala.

— ¡Ene! ¿non nago ni? — esan eban oindiño ondo itzartu barik.

— Emen, edeŕa: zeure izekotxuren besoetan, —erantzun eutsan izekoak.

— Ta... ¿zer? ¿Zeu emen zagoz oindiño? ¿Auŕekotsen? ¿Aitanean? ¡Izekoa!..

Izekoak indar egin bear eban begietara etorkozan negar-anpuluak lotuteko. Ta indar egin ta guzti be, batzuk urten eutsien; ta bere lobatxuaren arpegian bere arpegiko negar-malkoak mosuka ta laztanka legortuten zituzala, esan eutsan:

— ¡Ene Patxitxu! ¿Zer darabiltzu?.. ¿Zer daukazu, laztana? ¿Zer jazoten yatzu, edeŕa?

— Ezebez, izekoa.

— ¿Ezebez ta ainbeste zer?

— Ara, ba; amesetan egon naz ta...

— Ta ¿zek ekaŕi deutsuz oŕek amesok, ba? Esan egiá.

— Eztakit zek ekaŕi deustazan. Baña meza nausian... zeure deyunak entzun dodaz... eta gero... aitatxunak... eta zu, ezkonduten zarean egunean, bazoaz seguru emetik, Auŕekotsetik... aitanetik... guretik... eta,... izekoa...

— Baña ni joan-aŕen, beste izeko bat yatortzu ta...

— Bai, baña, ¿zer izango da nigaz zeu barik... eta... beste izeko bategaz?

— Izekoa baño geyago izango dozu aitak ekafiko deutsun izeko baŕia.

— ¿Izekoa baño geyago?

— Bai; *ama*.

— *¡Ama! ¡Ama*... bat izaten da! Ta *ama* izan neban andrea... il zan ta...

— Bai, lenengoa; baña ori beste ori bigaŕen ama izango dozu.

— ¿Ta amak lez artuko nau?.. Zeuk lez artuko banindu be,... enintzake asaŕe.

— Neuk baño obeto.

— Zuk baño obeto ezin nei iñok artu. Baña, zeuk diñozunetik, esan lei ondo artuko naula...

— Bai, laztana.

— ¡Tira, ba!

— ¡Tira, ba, Patxitxu! ¡Itxi alde batera alpeŕeko buruko miñok eta ames ganorabakook, eta joan poz-pozik zeure laguntxuakaz olgetan, or etse-auŕean daukazuz begira ta!

— Banoa, ba.

— ¡Tira, ba! — baŕiro esanda, iñoizko mosurik gozoena ezaŕi eutsan ezpantxuetan izeko onak bere lobatxu maiteari.

Ta au, bere izekoaren mosu gozo aren indaŕak bultz eginda legez, ariñeketa baten joan zan, Kataliñen besoetatik, bere laguntxuen auŕera.

Ta eurok lagun artuta, betiko euron olgeta-lekura, eliza-auŕeko landara, joan zan.

Bidean yoyala, lagunakaz berba egin-beaŕa ez eukan tartetxuetan, bere buruari esaten eutsan, poza siñistu eziñik:

— ¿Emongo ete deust, ba, iñoiz izeko baŕiak izeko Kataliñek gaur berton emon deustan lango mosurik?

* * *

Ordu beteko olgeta-aldi gozoa bere laguntxuakaz eginda, poz-pozik biurtu zan Auŕekotsera, bere etxera; berak nondik ezekiala, izeko baŕia ezaututeko bilduŕa poz biurtuten ekiola.

Beti lez, abemarietakoak entzun ta lastertxuan sartu zan etxean; ta beti euki oi eban gogo onagaz apaldu-ostean, iñoizko ondoen egin eban lo, zabal-zabal, Zeruko aingeruak berari begira poz-pozik egoteko eran.

* * *

Beste *amar lo eginda* ikusi eban izeko baŕia ezaututeko eguna.

Erbestera joan yakon aitatxu goizean goizetik, berari, lorik galerazo barik, loa baizen gozoa zan mosu andi-andi bat emonda; ta gaubean, izeko Kataliñen eztegura etoŕiriko lagun guztiak euron etxeetara joan baño lenago, agertu ekion izeko baŕiagaz... eta beste lagun bategaz.

¡Oi, bere poza andiagoa izateko, aitatxuk eta izeko baŕiak beste lagun bat ekaŕen eurakaz!

¡Bere antzeko mutilko polit-polit bat!

Irurak etozan an erbestean, izeko baŕiaren ta mutiltxu aren bizileku ordurartean izaniko etxean,

izeko bañiaren ta aitatxuren ezkontza - osteko eztegua eginda.

Patxitxuk, ¡jakiña zan!.. a mutikotxua ikusi ebanaz batera, nor zan jakin gura izan eban ta... aitatxuri itandu egin eutsan:

— Aitatxu, ¿nor da ori mutilkotxu ori?

Ta aitatxuk, mutilkotxu ekañi-bañiari mosu andi-andi bat emon ta gero, Patxiri, berari beste mosu bardin bat emonda, olantxe berba egin eutsan:

— Patxitxu, au... anaya eztok; baña anaitzako artu einke; ba beronen ama, eure izeko bañi au, eure ama ona izan zoanaren etse onetako ardurea artuten yatok.

Eta orduan, izeko bañiak, Patxitxuri berak be mosu andi-andi bat emon ta gero, mutilkotxu ekañi-bañiari beste mosu bardin bat emonda, esan eutsan oneri:

— Telestxu, euk be au berau... anaya eztok; baña anaitzako oinganik artu einke; ba beronen aitak, eure osaba bañi onek, eure aita ona zoanaren etsetik beronen etse onetara ekañi nayok, zeurok biok kristiñau onak lez azteko, lauron bizileku gaurganik yoagun etse maitegañi onetan.

— Olan dala, beroñeri, andrea, *izekoa* barik, *ama* deituko deutsat, — urten eutsan Patxitxuk urduri - urduri.

— Ta nik zure aitari, Patxitxu, *osabea* barik *aita* deitu bearko, — diño orduan Telestxuk.

Telestxun ama ta Patxitxun aita, berbalditxu

onek emoniko pozak biotzean ikututa, iya negar egin-beaŕean dagoz pozaren-pozez.

Ta Telestxun amak berak, Patxitxun ama baŕiak, negar malkoai iges eragiteko berbaldia amaituteaŕen, zer egin eztakiala, Patxitxuri, bero-nek pozen-pozen entzun eikean itaunetxu au egiten deutso:

— ¿Dotriña asko ikasten... dok... Patxitxu?

— Alegiña egiten dot, ama.

— ¡Tirok ba! Biar asita, Jainkoak gura bayok, baukok laguna onegaz, Telestxugaz, astegunetan eskolarako, ta yai-egunetan, Mesa nausirako, Dotriñarako ta Eŕosariorako.

— ¡Au poza!.. Eztaukat orain beste tamalik geure izeko Katalin ta gaur ezautu dodan osaba baŕi au biar bayoakuzala yakitea baño.

— Eztoaz atarañoko uŕunera be ta, etoŕiko dira... zaŕitxu.

— Bai, Patxitxu, albait zaŕien etoŕiko gara.

Poza sinistu-eziñik egoan Patxitxu onek gauzok entzunda.

Ta siñistu-eziñeko poz andi oŕegaz joan zan, aita-aman ta izeko-osaban atzetik, bere anai baŕi Telestxu eskutik daula, bein ordura-ezkero gertu egoan aparia jango eben maira.

* * *

Izeko-osabak goizetik ibiḹi-beaŕa eukien biaramonean, euron eŕi baŕian mezea entzuteko, ta oŕetarako apari luzea egin barik albait ariñen

atsedeten joatea ondo etorkielako, ez zan egote luzerik egin mayan.

Baña alan ta be, ta alkaŕeri zer-esan asko euki-aŕen be, Patxitxu ta Telestxu, aparia amaitu baño lenago, logureak geyago eginda, lo gozo-gozotan, alkaŕen ganera yausi zirean.

Ta alantxe lo gozo-gozotan dagozala,... oi batera eroan zituezan biok aitak eta amak: ordurartean Patxitxuna ta ordurik gora biona izango zan oira.

Ames gozo onik egingo eben aingerutxu biok alkaŕen ondotxuan.

* * *

Biaramonean, Auŕekotsetik eŕiko meza nausira lau lagun joan zirean.

Patxitxu ta Telestxu ta Patxitxun ta Telestxun aita-amak.

Mutilkotxu biok, euron aita-aman auŕetik ikustekoak yoyazan: biak neuŕi bardiñekoak, biak alkaŕen antz andikoak eta biak alkaŕen ondotxutik, iya batak besteari deutsala.

Ta baeukien mutilkotxuok zer-konteu alkaŕeri bidean.

Elizara eldurik, Patxitxuk Telestxu,... ¡ze esan be ez!,... mutilkotxuentzako aulkietariko baten auŕera eroan eban beragaz.

Ta antxe entzun eben meza nausia ta meza nausiko sermoya,... gizon askok oindiño ikasi barik daukien yaz edeŕagaz.

* * *

Elizatik urten ebenean, an elizpean aurkitu

ebezan, eurok baño lenago urtetea gertauta, euron begira egozan mutilkotxu lagunak.

Eurotariko batek, Martzel-izeneko zaŕentxuenak, beingorako itandu eutsan Patxitxuri Telestxugaitik:

— ¿Au nor dok, mutil?

— ¡Nor izango yoat ba? ¡Anaya!— erantzun eutsan Patxitxuk.

— ¡Bai, zereko anaya! Lengusua izango dok.

— ¡Ez! *¡Anaya!*

— ¿Eztok ba izeko baŕiaren semea?

— ¡Ez! *¡Ama baŕiarena!* ¿Eztok, Telestxu?

— Bai, Patxitxu,— diño Telestxuk.

— Olan dala, anayak zarie.

— ¡Bai orixe!,—erantzun eutsien biak batera.

— Ba gu... zeuron lagunak.

— Eta gu... zeuronak. ¿Eztok, Telestxu?

— Bai, Patxitxu, eurok gura badabe.

— ¿Eztogu gurako ba?,—diñoe Martzelen lagunak.

— ¡Tira, ba, asi gaitezan!, — diño orduan Matzelek berak. ¡Ia, Eŕamontxu! Ataraik pelotea. Txulian-txulianka egin bear yoguk... ¡Buruan yo barik, lepora yaurtitera gero!

— Bai, ein bear dan lez,—diño Patxitxuk, bere txartestxua elizpeko age-adar batetik eskegiten daula.

Eta landara urtenda, ekiñalean ekiten deutsie txulian - txulianka, amabietako kanpai - yotea entzun-artean.

Orduan, eurokandik uŕen dagozan zaŕen ondotxura yoan ta... eurokaz eŕezetan dabe *Anjelus*-izeneko otoitza bere iru abemariakaz.

Ta au eginda,... bakotxa bere etxera.

Baña ez Martzelek itaune au Patxitxuri egin barik:

— Dotriñara be etoŕiko zarie... biok, ¿ezta?

— Bai, anai biok.

* * *

Martzeleri aŕatsalderartean agur eginda, Patxitxuri Telestxu abadeagana eroatea otu yakon.

Ain zuzen be, orduantxe urten eban abade jaunak elizatik.

Eta euron txapeltxuak polito-polito burutik kendu, ta badoaz beragana, ta badiñotso Patxitxuk:

— Jauna, ¿apunteko dau au Dotriñan? Gaur asita, Dotriñara ibili gura dau.

— ¡Edertol ¿Zelan yaukok izena?

— Ba... Telestxu.

— ¿Ta abizena? ¿Apellidua?

— *Zumeza*, neuk lez. (Ta eztiño guzuŕik, alantxe dauko, suertez, euki be ta).

— ¿Lengusua dok?

— Lengusua baño geyao, jauna. *¡Anaya!* Neure ama baŕiaren semea da.

— Berau baŕiz neure aita baŕiarena, jauna,— urteten dau Telestxuk.

Eta biak batera diñotsie:

— ¡Anayak gara, jaunal

Ainbeste anai, anai izan gura-ezik bailegozan, txakur ta katu ikustea gertau ekion abade jaunak, mutilkotxu bion alkaŕen anai izan-gurea ikusiaz poztuta, igotzi gozo bana eurori burutxuetan eginda, poz pozik diñotsie:

— ¡Tira, ba, olantxe urte askotan! Ta... ¡etoŕi jai-domeka guztietan Dotriñara!.. Bakik ik, Patxitxu, urteko jai - domeka guztietan yatozan mutilko - neskatoai txartes bana ta gona bana emoten yeutsiedana;... ta ganera, geyen ikasten yoenai... Baña, entzuik: ¿zer ein deutsak euk... igaz irabazi endun txartes politari?

— ¡Ene! —esan eban Patxitxuk esku biak bular bietara eroanda, soñean eztaukala ikusirik— elizpeko age-adar batetik eskegita itxi dot, jauna, bera loitu barik txulian-txulianka egiteko. Ta berori ikusi dodanean, beroŕek Telestxu Dotriñan apuntetako, beroŕegana biok etortea baño besterik ez yat otu ta...

— ¡Yantzi arin, ba, otzitu barik!

— Bai, jauna. Geratu beite ondo.

— Etoŕi gero Dotriñara ta Eŕosariora ¡bietara!

— Bietara, bai, jauna,... anai biok.

— ¡Olantxe beti alkar anaitzat eukiko al dozue!, esan eban bere baŕuan, eskuak alkaŕeri emonda elizpera yoyazan mutilkotxu bioi begira.

Ta ikusirik Patxitxu, Telestxun eskua itxiaz batera elizpeko orma-ganera igon ta beingoan, age-adaŕetik arturiko txartesagaz, saltu bizkor baten jatsiten, iya eurok entzuteko eran esan eban:



¡Anayak gara, jauna!

— ¡Ta ez al zarie iñoiz be jausiko, aingerutxuok, pekatu astunean!

* * *

Etxera eldu zireanean, beingoan esan bear izan eutsan Patxitxuk... eurok noiz etoŕiko... atartean begira eukien ama maiteari:

— Ama, esan deutsat abade jaunari Telestxu Dotriñan apuntetako.

— Ta... ¿apelidua yakin dozu ba?

— ¡Ene! Yakinda dao. *¡Zumeza! Anayak* izan-ezkero ba...

— Bai, alantxe... Zoaze orain... biok,... semetxuak, or goiko soloan egongo da ta, aitagana,... esaten bazkaria gertu dagoala.

— Ta gero,... bazkal-ostean... ¡Dotriñara!... ¿Ezta, amatxu?

Ta au esanda, saltuka joan zirean mutilkotxu biak aitagana, amak agindu eutsiena esaten, amari begietatik urteten asi ekiozan negar-malko gozoak ikusi barik.




---

